# BERSO VERRIAC

1

Disponitu det asunto bati
verso berriac jartzia
ceñec naico du modu onetan
jendiac autan artzia,
aimbesteraño ez det sentitzen
gure escontsa galtsia
baña pena det culparic gabe
orrela engañatzia.

2

Nungoa naicen esan biar det
Evaristo det graciya
orain Pasayañ empliatzen naiz
Alzan jayo ta aciya,
Naparruaco dama batequiñ
ninzan tratatzen asiya
enredo asco provechu guchi
nic dedan irabaciya.

3

Nescacha ori emen vici da
baita Arriban jayua
abisaturic azaldu ciran
ceducan opiniyua,
nereganac nola ceducan
guztizco amoriyua
favore zala uste nuen da
izan det contrariyua.

4

Empeño on bat bialdurican
ninduen eracarriya
itzeguiteco billatu nuen
gramatica iracurriya,
merienda ere bacenducazun
gurezat pronto jarriya
mudanza baizic izan es dezu
mundu engañagarriya.

5

Comprometitu naizuquian da
afana franco bazuan
fiaturican aguindu niyon
satisfaciyo osuan,
itzac ederrac viotza falso
cariño fiña auzuan
publicatutzen astera nua
mereci dezun casuan.

6

Esaten niyon arlotia naiz
ondasun asco gabia
precisamente ez naiz izango
diru ascoren jabia,
eranzun ciran baldin bacera
lana eguiten trebia
sayatu ezquero lucituco da
cer da vicitza obia.

7

Languillia ta conductacua
contentu ciñan orduban
oraiñ baditu milla pretesto
guc ez daquigu cer duban,
orgullua edo grandeza bada
gaurco egunian munduban
ez baninzaden zurezaco ona
ez biartzia cenduban.

8

Ocasiyo bat emenizan da
juan dan aurreco urtian
ni ere vistan fortunatuba
neran ez nizan partian,
nere lagunac zuen disputa
ori biyonzat caltian
ez tocatzia obe litzaque
orrelacuen artian.

9

Disputa ori izan ezquero
pleituban dute seguitu
oraindic ere nic igual det
lenago aimbat creditu,
lardasca charrac ondorenian
neca biriac baditu
obra gaiztoric eguin dedanic
apenas desun aditu.

10

Caso oriec isaten dira
pisubac edo grabiac
neri etzaisquit iduritutzen
besteric bañon obiac,
pacienciya emango aldigu
ceru ta lurren jabiac
egun batzuec preso juanzaizquit
culpa aundiric gabiac.

11

Acciyo ortan nic ez de eguin
tocatsen ez dan gaucican
disputa edo soberbiaric
etsat gustatsen casican,
bestec etsiran ecer eguiten
ni ere egon pocican
mancha gaistoric etsat arquitsen
an isatia baicican.

12

Nescacha ori asi citzaidan
tristurac manifestatsen
orretaraco compromisuac
etsaisquiyola gustatsen,
lenago bero isanagatic
numbait asi da ostutsen
orrequiena galduba gatic
es naiz viciro estutsen.

13

Berac biartu ninduben eta
orain berac despedida
cembait nescacha ascoren berri
jaquin saliac oi dira,
antz eman gabe ez naiz egondu
len ere orri beguira
orise becin nescacha fiñac
gueyago ere badira.

14

Ya gastiac gurequin artu
gustiyoc escarmentubac
chit mudacorrac isandu dira
dama orren pensamentubac,
beretsat ere probechu guchi
neretsat sentimentubac
escontseco itsac emateraco
ondo atera contubac.

15

Escontseco itsac edocen moduz
ematecuac ez dia
cembaitec bati aguindu eta
hay baletorque bestia
endemas ere ederra bada
aberatsa ta gaztia
es da viciro icaratuco
len daducana ustia.

16

Aberatsaquin tratatsia gatic
galdu du nerequicua
pesadumbriac manifestatsen
isan du cera pijua,
auso batetic bestera ere
sombrillarequin dijua
interesetan es daquit cerdan
lujua badu naicua.

17

Caballeruaquiñ pasiatzen du
egunaz eta gabian
beso ondotic artutzen dute
nic baño modu obian
enteratuba egon biardu
debraceteco leguian
eusten diyote erori ez dediñ
lurrera uste gabian.

18

Penagariyac izaten dira
pobrien paraderuac
orrelacuac ezagutzeco
ez gaude mutill eruac,
guizon ederrac izqueta leunac
gañera boltsa beruac
gugandic gusto particularra
dizute caballeruac.

19

Zazpi ille betez esperanzan
ez naiz alferric egondu
nerequin ecer es duela isan
orain esaten omendu,
alcarrequin maiz ibilliguera
iñoiz echera lagundu
gueyago ere esango nuque
gogo aundiya baguendu.

20

Nerequiñ nola tratatu dezun
jendia francoc badaqui
pasa dan gausa ucatutcia
nic es derisat egoqui,
desamparuan utsiya gatic
es nasu asco erruqui
nic andre gaya billatuco det
es cuidadoric eduqui.

21

Escontsia da gausa errasa
sinisturican oi nago,
lengo moduban vici biarco
beti vildurrac banago,
fraile juateco bensamentuban
precisamente ez nago
zuc ere on bat artu ezasu
urdiñdu baño lenago.

22

Berso berriyac atera ditut
dibersiyua sortseco
conveni dira buru ariñac
juiciyuan sartzeco,
palorerican baldin badezu
oyen ordañac jartzeco
prevenituric ni egongo naiz
paper eder bat artzeco.

23

Despartitubac guelditzen guer
len ciñan nere maitia
batzuec asco arritsen dira
su neregana juatia,
viotsetican etsan isango
cenduben vorondatia
Agur Josefa esquerric asco
ondocho vici saitia.





Eibarren: Pedro Orúe-en moldizteguian.